# BERTSO BERRIYAK

## Txirritak jarriyak

1

Misiolari baten moduan
juan dan lau illabetian
nabill ejenplo onak ematen
inozentien tartian;
txorakeriyan ibilli giñan
sasoi genduen artian,
allegatu naiz irurogeita
amabigarrèn urtian,
zer lastima dan ezkondu gabe
sartu biarra lurpian.

2

Proporziyo bat izandu nuen
erdi zartu ta gerore
neskatxa batek—Txirrita, biyok
esposatuko gerade;
dituan gauzak eta diruak
zuretzat izan dirade
edo bestela azken fiñian
penetan illko zerade,
gurasu zarren muimentua
nola dan ikasi gabe.

3

Esan bezela neskatxa orrek
eman ziran albistia,
errespuesta aditu arte
larri egon zan tristia;
—Alde batera pena artzen det
zu modu ortan ustia,
baña zartu naiz ezta posible
lan oriyetan astia,
borondatia istimatzen det,
eskerrik asko, gaztia.

4

Serio xamar letu omendu
bautismoko liburuban,
ogeita zortzi urte dauzkala
San Migelak inguruan,
zartu baño len asi zaizkizu
ille txuriyak buruban,
nerekiñ ere etzera asi
oso leku seguruban,
gax'orrek egon biarko dezu
beste askoren moduan.



5

Oita bost milla errial dauzkat
amona zarrak utziyak
milla pezeta arraya saltzen
neronek irabaziyak;
ankak listo ta eztarri ona
muimentuak biziyak,
nik dedan ditxa ez dadukate
munduan diran guziyak,
mixeriyarik ez dadukagu
Jaungoikuari graziyak.

6

Mutill zar eta neska zar asko
gelditu giñaden baña
gure partiak eta geyago
badago zeñek egiña;
sortzen ditugu labore puskak
aixa gastatzeko diña;
ogei pezeta anea artua,
lau duro t'erdi iriña,
berrogeitaño iritxiko zan
danak ezkondu bagiña.

7

Ama alabak bakarrik bizi
mantenu ona mayian,
esposatzeko egon banitzan
ipiñi nazu gayian,
oinbeste diru sobratuba ta
senarra artu nayian
eziñ billatu baldin badezu
Donostiyan ta kayian
Txomiñenian billera da ta
zuaz urrengo jayian.

8

Adiskide batek esan dit neri
Donostiyako partian:
—Iya lazuan sartu ziñuzten
etzabiltza apartian,
neskatx ori ez kasorik egin,
utzi zayozu pakian,
goizero an da botillarekiñ
Amueneko atian,
litro erdi bat patar biaute
ama alaben artian.

9

Diru ta oyak baziñuela
amona zarrak utziyak
ni engañatzen ibilli ziñan
gezurrak dira guziyak,
zuek bi aizpa omen ziñaten
ama gaxuak aziyak,
zurrut geyago egitiatik
arraya saltzen asiyak
zuk ez baño arrek merezi ditu
ezkerrak eta graziyak.

10

Ardua ere kastatzen dute
ez aguardinta bakarrik,
bazkaldutare kaferik gabe
ez da artutzen patarrik
ez Donostiyan jayotakorik
aiñ gutxi goyarritarrik,
bere buruba ola ofrezitzen
ez dabill neskatx jatorrik;
baño gaxuak nere kontura
etzuen busti' muturrik.

11

I eyo zulotik beiratzen zuen
gu ari giñan lekua,
anima salbo antzaran gisa
luzaturikan lepua,
berak pentsatu zuen bezela
egiñ bazuen jokua
ni izandu naiz alako batek
merezi bezelakua,
lenago iru baldin badira
¡ ai zer nolako laukua !

12

Eziñ sinistu izandu nuen
neskatxa orren eranik,
ta berak ere etzekiyen ni
zurruterua nitzanik;
alkarrengana bildu bagiña
etzan gurekin gauz onik
jende geyegik jakiñ ez dezan
ez det esango izenik
oraindik ere soltera dago
etzuen artu gizonik.

Imp - Macazaga Rentería